# HASIERAN (1,1—11,32)

## Munduaren eta gizadiaren jatorria (1,1—5,32)

### Zeru-lurren kreazioa

1 [1] Hasieran, Jainkoak zeru-lurrak
egin zituen*. [2] Lurra nahas-mahas
hutsa zen: leize handiaren gain ilunbea.
Jainkoaren arnasa* uren gainean zebilen.
[3] Eta Jainkoak esan zuen: «Izan bedi
argia».
Eta izan zen argia. [4] Ikusi zuen Jain-
koak argia ona zela* eta bereizi egin
zuen ilunbeetatik: [5] argiari «egun»
eman zion izen eta ilunbeei «gau». Ho-
nela, lehen eguna burutu zen*.
[6] Jainkoak esan zuen: «Izan bedi sa-
baia* uren artean, goiko eta beheko
urak bereiz ditzan».
Eta hala izan zen. [7] Jainkoak sabaia
egin zuen eta sabai azpiko urak sabai
gainekoetatik bereizi zituen. [8] Jainkoak
sabaiari «zeru» eman zion izen. Honela,
bigarren eguna burutu zen.
[9] Jainkoak esan zuen: «Bil bitez mul-
tzoan* zeru azpiko urak eta ager bedi
lehorra».
Eta hala izan zen. [10] Lehorrari «lur»
eman zion izen eta ur-multzoari «itsa-
so». Eta Jainkoak ona zela ikusi zuen.
[11] Jainkoak esan zuen: «Eman bitza
lurrak belar hezea, hazidun landareak
eta orotariko frutarbolak beren hazi eta
guzti».
Eta hala izan zen. [12] Eta lurrak orota-
riko hazidun landareak eta frutarbolak
beren hazi eta guzti eman zituen. Eta
Jainkoak ona zela ikusi zuen. [13] Honela,
hirugarren eguna burutu zen.
[14] Jainkoak esan zuen: «Izan bitez ar-
gizagiak* zerusabaian, eguna eta gaua

**1,1** *Hasieran, Jainkoak zeru-lurrak egin zituen. 2 Lurra...:* Honela ere itzul daiteke: *Jauna zeru-lurrak egiten hastean, 2 lurra...* **1,2** *Jainkoaren arnasa:* Hebraierazko hitzak *haize, arnasa* nahiz *izpiritu* esan nahi du. Beraz, honela ere itzul daiteke: *Jainkoaren izpiritua* edo *haizerauntsia* (*Jainkoaren* superlatiboa adierazteko ere erabiltzen dela kontuan harturik). **1,4** *ona zela:* Lehen kap.an errepikatzen den tx. honetako *ona, ederra* ere itzul zitekeen, kreazioak sortzen duen poza eta gozamena adieraziz. **1,5** *lehen eguna burutu zen:* H.h., *izan zen arratsaldea, izan zen goiza, egun bat*; berdin beste egunetarako. Testu hau idatzi zen garaian, eguna arratsaldean hasten zela uste zen. **1,6** *sabaia:* Ortzea ganga edo sabai solidotzat jotzen zuten antzinatean, gaineko eta azpiko ur-multzoak bereizten zituelarik (ik. 7,11 oh.). **1,9** *multzoan:* Grekozko itzulpenaren arabera; hebraierazkoak *toki batean* dio. **1,14** *argizagiak:* Erlijio paganoek astroak jainkotzat zituzten bitartean, hemen sorkari huts dira, lurra argitzeko eta liturgi egutegia finkatzeko ezarriak.

**1,1** Kreazioa 2,4-25; Is 42,5; Sal 8; 89,10-13; 104; Jb 26,7-14; 38; Es 8,22-31; Si 16,26—17,4; Jn 1,1-3; Kol 1,15-17. **1,3** Izan bedi argia 2 Ko 4,6. **1,5** argia/ilunbeak Is 45,7; 60,19-20; Ap 22,5. Ik. Jn 8,12. **1,14** argizagiak zerusabaian Is 40,26; Jr 31,35; Ba 3,33-35.

bereizteko, eta jaiak, egunak eta urteak
ezagutarazteko. 15 Izan bitez zerusa-
baian lurrari argi egiteko».
Eta hala izan zen. 16 Jainkoak bi ar-
gizagi handi egin zituen: handiena
egunaren gain jartzeko eta txikiena
gauaren gain. Eta izarrak ere egin zi-
tuen. 17 Zerusabaian ezarri zituen lu-
rrari argi egiteko, 18 egunaren eta gaua-
ren gain jartzeko, argia eta ilunbea be-
reizteko. Eta Jainkoak ona zela ikusi
zuen. 19 Honela, laugarren eguna buru-
tu zen.
20 Jainkoak esan zuen: «Egin bezate
urek borbor bizidunez; egin bezate he-
gan hegaztiek lurraren gainean, aire-
an».
21 Jainkoak itsas arraintzarrak sortu
zituen, uretan borbor dabiltzan orotari-
ko bizidunak eta orotariko hegaztiak.
Eta Jainkoak ona zela ikusi zuen. 22 Eta
bedeinkatu egin zituen*, esanez: «Sor
itzazue umeak, ugaldu eta bete itsas
urak; ugal bitez hegaztiak ere lurraren
gainean». 23 Honela, bosgarren eguna
burutu zen.
24 Jainkoak esan zuen: «Eman bitza
lurrak orotariko bizidunak: abereak,
piztiak eta narrastiak».
Eta hala izan zen. 25 Jainkoak orota-
riko bizidunak sortu zituen: abereak,
piztiak eta narrastiak. Eta Jainkoak ona
zela ikusi zuen.
26 Jainkoak esan zuen: «Egin deza-
gun gizakia; izan bedi gure antzeko, gu-
re irudiko; menpera ditzala itsasoko
arrainak, zeruko hegaztiak, abereak,
basapiztiak* eta lurrean narrastaka da-
biltzan piztia guztiak».
27 Jainkoak, beraz, bere antzeko egin
zuen gizakia, Jainkoaren beraren irudi-
ra egin zuen; ar eta eme egin zituen.
28 Eta bedeinkatu egin zituen, esa-
nez: «Sor itzazue umeak eta ugaldu, be-
te lurra eta izan haren nagusi; menpera
itzazue itsasoko arrainak, zeruko he-
gaztiak eta lurrean narrastaka dabiltzan
piztia guztiak».
29 Jainkoak esan zien: «Hara, zeuei
ematen dizkizuet lurrazalean diren ha-
zidun landare guztiak eta hazidun fru-
tarbola guztiak; horiek izango dituzue
janari. 30 Abere, zeruko hegazti eta lu-
rrean narrastaka dabiltzan bizidun guz-
tiei, berriz, belar hezea ematen diet ja-
nari».
Eta hala izan zen. 31 Eta egin zuen
guztia oso ona zela ikusi zuen Jainkoak.
Honela, seigarren eguna burutu zen.

2 1 Honela burutu zituen Jainkoak ze-
ru-lurrak, berauetan dagoen guztia-
rekin. 2 Zazpigarren egunerako burutu
zuen Jainkoak berak eginiko lana eta
zazpigarren egunean lanari utzi, 3 eta
bedeinkatu egin zuen zazpigarren egu-
na* eta sagaratu, egun horretan har-
tu baitzuen atseden kreazio-lanetik.
4 Hau da zeru-lurren kreazioaren his-
toria*.

**Gizakiaren kreazioa**

Jainko Jaunak zeru-lurrak egin zi-
tuenean, 5 ez zegoen oraindik landare-
rik lurrean, ezta belarrik ere erneta,
Jainko Jaunak ez baitzion oraindik lu-
rrari euririk eman, eta ez baitzen lurra
lantzeko gizakirik. 6 Hala ere, lurraza-
la hezetzen zuen lurruna zerion lurra-
ri.
7 Orduan, Jainko Jaunak lur-hautsez
gizona moldatu zuen; sudurzuloetan bi-
zi-arnasa putz egin zion, eta gizona bizi-
dun bilakatu zen. 8 Ondoren, Jainko

**1,22** *bedeinkatu egin zituen:* Bibliaren pentsaeran bedeinkazioa ez da izpiritruzko dohaina bakarrik; Jainkoarengandiko indar moduko bat ere bada, naturan eta gizakiarengan bizia sortu eta garatzen duena. **1,26** *basapiztiak:* Siriar itzulpenaren arabera; hebraierazkoak *lur osoa* dio. **2,3** *zazpigarren eguna:* Larunbata da, Jaunari sagaratu beharreko atseden-eguna. Zazpigarren egunean Jaunak *lanari utzi* (*xabat*) eta atseden hartu zuen. Horren ondorioz, larunbata (xabat) atsedenari atxikia egongo da Israelen (ik. Ir 23,12) eta Jainkoaren eta herriaren arteko itunaren seinale bihurtuko (ik. Ir 32,12-17). **2,4** *kreazioaren historia:* H.h., *jatorriak*. Normalean, jatorri bateko ondorengoak adierazten ditu (5,1; 6,9; 10,1); testuinguru honetan *jaiotza, sorrera* bezala hartzen da.

**1,16** bi argizagi handi Sal 104,19; 136,7-9; Si 43,1-10. **1,25** abereak, piztiak Sal 50,10-11. **1,26** Jainkoaren antzeko, irudiko 5,1.3; 9,6; Sal 8,5-6; Jkd 2,23; Si 17,3; 1 Ko 11,7; Kol 3,10; St 3,9. **1,27** ar eta eme 5,2; Mt 19,4. Ik. Ga 3,28. **1,28** Sortu umeak, ugaldu 8,17; 9,1.7. Ik. 1,22. **//** izan nagusi, menperatu 9,2; Sal 8,7-9; Jkd 9,2; 10,2; Si 17,2-4; St 3,7. **1,31** guztia oso ona Sal 104,24; Si 39,33-35; 1 Tm 4,4. **2,2** zazpigarren eguna Ir 20,11; 31,12-17; Heb 4,4. **2,7** bizi-arnasa gizonari Sal 104,29-30; Jb 33,4; 34,14-15; Koh 3,20; 12,7; 1 Ko 15,45-49.

Jaunak baratza landatu zuen Edenen*,
ekialdean, eta hantxe ezarri moldaturi-
ko gizona. 9 Orotariko zuhaitzak sorta-
razi zituen lurretik, ikusgarriak eta frui-
tu gozodunak. Baratza erdian bi zuhaitz
ernearazi zituen: batak bizia ematen
zuen eta besteak dena ezagutzeko ahal-
mena*.
10 Edendik ibai bat sortzen zen; ba-
ratza ureztatu eta gero, lau adarretan
banatzen zen. 11 Lehenari Pixon zeri-
tzan; urrea aurkitzen den Habilako* lu-
rraldea inguratzen du. 12 Urre ona han-
goa; badira han erretxina eta harribi-
txiak ere. 13 Bigarrenari Gihon zeritzan;
honek Etiopiako* lurralde guztia ingu-
ratzen du. 14 Hirugarrenari Tigris, Axur-
ko ekialdetik doana. Laugarrenari Eu-
frates*.
15 Jainko Jaunak gizona hartu eta
Edengo baratzan ezarri zuen, landu eta
zain zezan. 16 Eta agindu zion: «Bara-
tzako zuhaitz guztietatik jan dezakezu;
17 baina ez jan dena ezagutzeko ahal-
mena ematen duen zuhaitzetik; hartatik
jaten baduzu, hil egingo zara».

**Emakumearen sorrera**

18 Gero, esan zuen Jainko Jaunak:
«Ez da on gizona bakarrik egotea; egin
diezaiodan berari dagokion laguna».
19 Jainko Jaunak, landako abere guz-
tiak eta zeruko hegazti guztiak lurrez
moldatu eta gizonari eraman zizkion
zein izen ezartzen zien ikusteko; hone-
la, bizidun orok gizonak ezarritako ize-
na izango zuen. 20 Beren izena jarri
zien, beraz, abere guztiei, zeruko he-
gaztiei eta piztiei; baina berari zegokion
lagunik ez zuen aurkitu. 21 Orduan,
Jainko Jaunak lozorroan murgilarazi
zuen gizona. Loak hartu zuenean, sai-
hets-hezur bat kendu zion, hezurraren
hutsunea haragiz bete ziolarik. 22 Jain-
ko Jaunak gizonari* kenduriko saihets-
-hezurrez emakumea moldatu eta gizo-
nari eraman zion. 23 Honek esan zuen:

«Hau bai dela
ene hezurraren hezur,
ene haragiaren haragi!
"Emakume" izango da deitua
gizakumeagandik*
izan baita hartua».

24 Hargatik, gizonak bere aitamak
utziko ditu bere emaztearekin elkartze-
ko, eta bat bera* izango dira.
25 Larrugorri zeuden gizona eta
emaztea; hala ere, ez zuten elkarren
lotsarik.

**Jainkoaren agindua hautsi**

3 1 Sugea zen Jainko Jaunak eginda-
ko piztiarik maltzurrena.
Sugeak esan zion emakumeari:
—Jainkoak debekatu egin dizue, be-
raz, baratzako arbola guztietako frui-
tuetarik jatea?
2 Emakumeak erantzun:
—Ez, jan dezakegu baratzako arbo-
letako fruituetarik. 3 Baratza erdian da-
goen zuhaitzaz bakarrik esan digu Jain-
koak: «Ez jan horretatik, ezta ukitu ere,
hil nahi ez baduzue».
4 — Ez zarete inolaz ere hilko —esan

**2,8** *Eden:* Toki-izena da, non zegoen jakiterik ez dugun arren. Hebraierazko hitzak *atsegin* esan nahi duen hitzarekin zerikusia du. **2,9** *batak bizia... ezagutzeko ahalmena:* H.h., *biziaren zuhaitza eta ongiaren eta gaizkiaren ezagutzaren zuhaitza*. Bigarren zuhaitzari dagokionez, honela ere uler daiteke: *besteak, zoriontsu izateko jakituria*. **2,11** *Pixon:* Erabat ezezaguna zaigu. // *Habila:* Arabia iparraldean dago (ik. 10,29); baina Palestina hegoaldean, Egiptotik hurbil, dagoen lurralde bat ere izan daiteke (ik. 25,18). **2,13** *Gihon:* Ezezaguna hau ere, izen bera duen Jerusalen ondoko iturria izan ezik (ik. 2 Kro 32,30). // *Etiopia:* H.h., *Kux*, normalean Etiopia adierazten duen izena; baina bazen beste Kux bat ere, Madianen, Palestinaren hego-ekialdean. **2,14** *Tigris, Eufrates:* Mesopotamia besarkatzen duten bi ibai ezagunak dira. *Axur* edo *Asiria* Mesopotamiako iparraldea da. **2,22** *gizonari:* Lehen kapituluetan *gizaki* edota *gizon* itzulitako hitza, 4,25etik aurrera *Adan* pertsona-izen bezala erabilitako hitza bera da. *Adan* lur esan nahi duen *adama* hitzetik eratorria da; izatez, ez da pertsona-izena, izen arrunta baizik, gizateria, gizon-emakume guztien multzoa, adierazten duena. **2,23** *Emakume/gizakume:* Hizjokoa egiten du hebraierazkoak *gizon* esan nahi duen hitzaren eta beraren femeninoaren artean, gizonaren eta emakumearen arteko kidetasuna azpimarkatzeko. **2,24** *bat bera:* Edo *izaki bat bera*; h.h., *haragi bat bera*.

**2,8** Eden 3,23-24; 4,16; Is 51,3; Ez 31,9.16.18; 36,35; Jl 2,3. **2,9** bizia ematen zuen zuhaitza 3,22; Es 3,18; Ap 2,7; 22,2.24. // dena (ongia eta gaizkia) ezagutzeko ahalmena 3,5.17.22; Dt 1,39; 2 Sm 14,17; 1 Erg 3,9; Is 7,15-16. **2,17** hil egingo zara Erm 6,23. Ik. Jkd 1,12-15. **2,18** dagokion laguna Es 18,22; Si 36,29. **2,22** emakumea gizonarentzat sortua 1 Ko 11,8-9; 1 Tm 2,13. **2,24** gizona eta emaztea Es 5,15-20; 31,10-31; Koh 9,9. // bat bera izango Ml 2,14-15; Mt 19,5+. **3,1** Sugea Jkd 2,24; Jn 8,44; Ap 12,9; 20,2.

zion sugeak—. 5 Ongi daki Jainkoak,
hartatik jan dezazuenean, begiak zabal-
duko zaizkizuela, eta bera bezalako bi-
hurtuko zaretela, dena ezagutzeko
ahalmena* lortuz.
6 Ikusi zuen emakumeak fruitua go-
zoa zela, arbola ikusgarria eta jakituria
lortzeko desiragarria. Hartu zuen, be-
raz, haren fruituetariko bat eta jan egin
zuen. Gero, bere senarrari eman eta
honek ere jan egin zuen. 7 Orduan, be-
giak zabaldu zitzaizkien eta biluzik zeu-
dela ohartu ziren. Piku-hosto batzuk jo-
si eta estalki bana egin zuten.
8 Arratsean, gizonak eta emazteak
baratzan zebilen Jainko Jaunaren oi-
notsa entzun zuten eta harengandik
gorde egin ziren zuhaitz artean. 9 Baina
Jainko Jaunak dei egin zion gizonari:
—Non zara?
10 Gizonak erantzun:
—Zure oinotsa baratzan entzun du-
danean, beldurtu eta gorde egin naiz,
biluzik nagoelako.
11 Jainkoak esan zion:
—Eta nork jakinarazi dizu biluzik
zaudela? Galarazi nizun arbolako frui-
tua jan al duzu?
12 Gizonak erantzun:
—Laguntzat eman didazun emaku-
meak fruitua eskaini dit eta jan egin
dut.
13 Jainko Jaunak esan zion emaku-
meari:
—Zer egin duzu?
Emakumeak erantzun:
—Sugeak engainatu nau eta jan egin
dut.
14 Orduan, Jainko Jaunak sugeari
esan zion:

«Hori egin dualako,
madarikatua hi abere guztien artean
eta basapiztia guztien artean!
Sabel gainean arrastaka ibiliko haiz
eta hautsa jango duk
heure bizitzako egun guztietan.
15 Elkarren etsai egingo zaituztet
hi eta emakumea,
hire eta haren ondorengotza;
honek burua zapalduko dik
eta hik orpotik helduko diok».

16 Emakumeari esan zion:

«Haurdun gelditzean,
oinazeak ugalduko dizkizut
eta saminez izango dituzu haurrak;
irritsak senarrarengana
bultzatuko zaitu,
eta hura izango duzu nagusi».

17 Eta gizonari esan zion:

«Emaztearen esanari jaramon egin
eta galarazi nizun zuhaitzetik
jan duzunez gero,
madarikatua lurra zure erruz!
Nekearen nekez
aterako diozu janaria
zeure bizitzako egun guztietan.
18 Sasia eta laharra emango dizkizu,
basalandarez elikatu beharko duzu.
19 Zeure bekokiko izerdiz
jango duzu ogia,
lurrera itzuli arte,
handik izan zara hartua eta:
hautsa zara
eta hautsera itzuliko zara».

**Edendik kanporatuak**

20 Gizonak bere emazteari Eba, hau
da, «Bizi», eman zion izen, bizidun guz-
tien ama delako. 21 Jainko Jaunak la-
rruzko arropaz jantzi zituen gizona eta
emaztea. 22 Gero, Jainko Jaunak esan
zuen: «Horra gizakia gutariko bat bi-
hurtua, dena ezagutzeko ahalmena*
duelarik. Ez dezala orain bizi-arbolako
fruiturik hartu eta, hura janez, betirako
bizi». 23 Beraz, Jainko Jaunak, Edengo
baratzatik bota egin zuen, lurra landu

**3,5** *dena ezagutzeko ahalmena:* Ik. 2,9 oh. **3,22** *gutariko: Gu* horrek Jainkoaren ahotan, honek, gorte gisa, bere inguruan dituen jainkozko izakiak adierazten ditu. *// dena ezagutzeko ahalmena:* Ik. 2,9 oh.

**3,5** Jainkoa bezalako 3,22. Ik. Is 14,14; Ez 28,2; 2 Ts 2,4. **3,6** tentazioaren lilura St 1,13-15. **3,10** biluzik Is 20,2-4; Ap 3,18; 16,15. **3,13** Sugeak engainatu 2 Ko 11,3; 1 Tm 2,14. **3,15** Elkarren etsai Ap 12,17. **3,16** haurrak saminez 35,16-18; Jn 16,21+; Ap 12,2. **3,17** madarikatua lurra 5,29; Os 4,3; Erm 8,20. Ik. 8,21. // lanaren nekea 4,12; Jb 7; Koh 2,22-23. **3,18** sasiak eta laharrak Heb 6,8. **3,19** hautsa zara Sal 90,3; 104,29; Koh 3,20; 12,7. Ik. 2,7+. **3,22** Gutariko bat bihurtu 3,5+. // bizi-arbola 2,9+. **3,23** Edengo baratza 2,8+.

zezan, handik izan baitzen hartua.
24 Gizakia bota ondoren, izaki hegadun
batzuk jarri zituen Edengo baratzaren
ekialdean, suzko ezpata distiratsuak zi-
tuztela*, bizi-arbolarako pasabidea ix-
teko.

‡Spain
Basque
Bible, DC
1994
ICF
UBS
Madrid